

Barakaldo, 2020ko ekainaren 15an

# Hiri-udalekuen inguruko proposamena

Argi dago azken asteetan behera egin duela Covid-19 birusaren intzidentzia-mailak. Egoerak hobera egin duela ukaezina da, baina horrek ez du esan nahi lasaitu eta iraganeko normaltasunera itzuli behar dugunik.

**Kontu handiz ibiltzeko garaia da eta gure herritarren bizitzak hobetuko dituen jarduerak garatzekoa**, konfinamenduaren ondoren osasunean eragin positiboa dutenak aktibatu eta haurren eta nerabeen **zaintza eta eskubideak erdigunean jarriz; betiere, osasun-agintariek gomendatutako neurriei jarraituz**.

Ildo horretan, eta deseskaladaren faseek aurrera egiten dutela ikusita, uda honetan baldintzak egon litezke **Barakaldon hiri-udalekuak antolatzeko**, betiere osasun-neurriekin eta gure herriko haur eta gazteek aisialdiaz eta denbora libreaz gozatzeko duten eskubidea bermatzeko helburuarekin, eta **Covid-19-aren krisiak sortutako egoerak arintzen laguntzeko.**

1. Hiri-udalekuak **euskararekin harreman etengabea eta zuzena izateko aukera dira**. Eskola presentzialak bertan behera geratu zirenetik, milaka haur eta gazte barakaldarrek euskararekiko harremana galdu dute, izan ere, egun, euskara ikastetxearekiko harremanean eta bertan egiten diren jardueretan oinarritzen da. Horregatik, deslotura horri aurre egin behar zaio, euskararekiko harremana hainbeste hilabetez galtzeak eskola-errendimendu okerragoa ekarriko baitu, eta horrek desorekak handitu.

2. **Osasun-krisi honek agerian utzi du zaintza-lanen egiturazko krisia**. Eskolen itxierak, sektore publikoaren erantzun faltak eta kontziliazio neurri errealik-eza direla eta**, zaintza zama biderkatu egin da** etxeetan. Badator uda, eta guraso asko aparteko lan-egoeretan daude: opor baldintzatuak edo mugatuak, orduak itzultzeko betebeharra, eta abar. Kontziliazio-neurriak har ditzaketen familientzat ere baliteke neurri horiek emakumeen gain egotea, eta horrek eragin negatiboa du haien egoera ekonomikoan, eta zer esanik ez etxean hilabete luzez zaintzeak dakarren karga psikologikoaz.

3. **Haur eta gazteen aisialdi jarduerak eskubidea izateaz gain, hauetan gozatu eta parte hartzea beharrezkoa da.** Gainera, epe laburrera, udarako jarduerak antolatzeak aukera ematen digu hausnarketarako eta lanerako guneak proposatzeko, etxean bizi izandakoari buruz, zaintzak duen garrantziari buruz eta gure gizartean erantzun kolektibo eta komunitarioak aktibatzeko beharrari buruz.

4. **Aisialdiko jarduerak herritar guztientzat eskuragarri eskaintzea udal arduradun gisa bermatu behar dugun printzipioa da**, familien arteko ezberdintasun ekonomikoek bereizi egiten baitituzte eskaintza pribatua eskura dezaketenak eta ezin dutenak, eta gaur egun ez dago eskaintza publikorik. Antolatutako aisialdiko jarduerak eskaintzeak, halaber, osasun-neurriak bermatzen ez dituzten kontrolik gabeko ekimenak egiteko arriskua saihestuko du.

5. **Egoera zaurgarrietan egon daitezkeen eta konfinamendu-garaian egoera pertsonalak zaildu zaizkien familietako haurrei eta gazteei lagundu behar diegu**. Babes hori emateko,



etxetik kanpoko aisialdirako, mugimendurako eta jardueretarako beste espazio batzuk eskaini behar dira.

6. **Jarduera fisikoa, jolasteko denbora, joan-etorriak** eta osasunean eta haurtzaroaren garapenean eragin positiboa duten eta **ezinbestekoak diren gainerako jarduerak berreskuratu behar ditugu, Covid-19-aren pandemian alde batera utzi baitira.** Eta, bide batez, hurrengo ikasturterako bidea irekitzea, pixkanaka taldean eta espazio desberdinetan lan egiten dutenean kontuan hartu behar dituzten irizpideak eta neurriak har ditzaten.

**Uste dugu orain dela garaia aisialdi osasungarriko alternatibak aktibatzeko**, are gehiago jakinda erakunde gisa hurrengo egunetan dekretu bidez argitaratuko dela Enplegu eta Gizarte politiketarako sailburuak 2020ko ekainaren 10ean emandako agindua, zeinaren bidez baimentzen eta arautzen baita hezkuntzako eta gazteen aisialdiko jarduerak berriz hastea.

Agur bero bat eta animo, gogoratu behar duzuenerako Barakaldoko EH bilduko taldea eskura duzuela.

Maria Solar
Barakaldoko EH Bilduren bozeramailea

**EH BILDU BARAKALDO**
94 478 93 65 • 679 469 788 • (Prentsa: 657 732 934. Aitor)
www.barakaldo.ehbildu.eus
barakaldo@ehbildu.eus



Barakaldo, a 15 de junio de 2020

# Propuesta sobre colonias urbanas

Es evidente que durante las últimas semanas se ha producido un descenso en el nivel de incidencia del virus Covid-19. Es innegable que la situación ha mejorado, pero esto no significa que tengamos que relajarnos y volver a la normalidad del pasado.

Ahora es el momento de extremar la precaución y desarrollar actividades que mejoren la vida de nuestra ciudadanía activando aquellas que tengan un impacto positivo en la salud después de periodo de confinamiento, poniendo siempre en el centro el cuidado y los derechos de los niños, niñas y adolescentes y siguiendo las medidas recomendadas por las autoridades sanitarias.

En este sentido y viendo cómo avanzan las fases de la desescalada, este verano podría haber condiciones de organizar colonias urbanas en Barakaldo, en condiciones muy concretas, siempre con medidas sanitarias y con el objetivo de garantizar el derecho al disfrute del ocio y tiempo libre de la población infantil y juvenil de nuestro pueblo y que ayuden a paliar las situaciones generadas por la crisis del Covid- 19.

Las colonias urbanas, son una oportunidad de retomar el contacto continuo y directo con el euskera. Desde que se suspendieron las clases presenciales, miles de niños/as y jóvenes barakaldeses han perdido el contacto con el euskera (ya que este se centraba en la relación con el centro educativo y las actividades que en ella se realizan). Por ello hay que enfrentar esta desvinculación, ya que la pérdida de relación con el euskara durante tantos meses acarreará un peor rendimiento escolar y de nuevo una situación de desfavorecimiento y desigualdad.

Esta crisis sanitaria ha puesto de manifiesto una crisis estructural de cuidados. El cierre de las escuelas y la falta de respuesta del sector público y de medidas de conciliación reales, ha hecho que la carga de cuidado en los hogares se haya visto multiplicada. Entramos en el periodo estival y muchos padres y madres se encuentran en una situación laboral excepcional (vacaciones condicionadas o restringidas, obligación de devolución de horas, etc.). Incluso para aquellas familias que pueden acceder a medidas de conciliación, es posible que éstas recaigan sobre las mujeres, lo que repercute negativamente en su situación económica, por no hablar de la carga psicológica que supone cuidar tantos meses en casa.

El disfrute y la participación de los niños, niñas y jóvenes en las actividades de ocio es necesario además de constituir un derecho para los niños, niñas y adolescentes. Además, a corto plazo, la organización de actividades de cara al verano nos permite proponer espacios de reflexión y trabajo sobre lo vivido en casa, sobre la importancia del cuidado y sobre la necesidad de activar en nuestra sociedad respuestas colectiva y comunitarias.

Ofertar actividades de ocio asequibles y accesibles a todo el conjunto de la población es un principio que como responsables municipales debemos garantizar, evitando así las desigualdades generada por motivos económicos entre nuestras familias, que discriminan entre las que pueden acceder a la oferta privada frente a la inexistente oferta pública en la actualidad. Ofertar actividades de ocio organizadas, también evitará el riesgo de que se lleven a cabo iniciativas incontroladas que no garanticen medidas sanitarias.



Debemos apoyar a los niños, niñas y jóvenes de familias que pueden encontrarse en situaciones de vulnerabilidad y cuyas situaciones personales se han agudizado en la época de confinamiento. Esta protección pasa por ofrecer otros espacios para el ocio, el movimiento y actividades fuera de casa. Debemos recuperar la actividad física, el tiempo de juego, los desplazamientos y demás actividades que tienen un efecto positivo y que son imprescindibles en la salud y en el desarrollo de la infancia, y que han sido en gran medida abandonadas durante la pandemia del Covid-19. Y, de paso, abrir el camino de cara al próximo curso para que ellos y ellas vayan adquiriendo poco a poco los criterios y medidas que deben tener en cuenta cuando trabajen en grupo, en espacios diferentes.

Creemos que ahora es el momento de activar alternativas de ocio saludable, más sabiendo como institución que en los próximos días se va publicar por decreto la orden dictada el 10 de junio de 2020, por la Consejera de Empleo y Políticas Sociales por la que se permite y regula la reanudación de las actividades de tiempo libre educativo y juvenil.

Un saludo y mucho ánimo y recuerda que podéis contar con todo el equipo de EH Bildu Barakaldo para lo que necesitéis.

Maria Solar
Portavoz de EH Bildu Barakaldo

**EH BILDU BARAKALDO**
94 478 93 65 • 679 469 788 • (Prentsa: 657 732 934. Aitor)
www.barakaldo.ehbildu.eus
barakaldo@ehbildu.eus